# a. sarrera

Proposamenak biltzen dituen txosten honek, “hizkuntza biziberritzeko gidaritzari buruzko ikastaldi trinkoa” hobetzeko ideiak eskaintzea du helburu. Aurretik ebaluazioan agerian geratu diren ezaugarriak baliatu nahi ditu. Ikastaldia baloratzeko orduan, pisu gehien izan duten esparruak: indargune eta aukerenak izan dira, beraz, ikastaldia hobetzen saiatzea dirudi aukera logikoena.

Mahai gainean jartzen diren proposamenak hiru ataletan banatuta daude. Lehenengo, ikastaldiaren alde materiala eta egiturari dagozkion proposamen labur batzuk jorratzen dira ebaluazioan bildutako ideietatik. Ondoren, alde akademikoan landu daitezkeen gain anitz proposatzen dira, bakoitza jorratzearen gaineko interesak azalduz. Bigarren puntu honek du pisu gehien txostenean. Azkenik, ikastaldian zehar egiten diren bisitetarako ideia berriak bildu nahi dituen atala dago, ideia solte batzuk proposatutako gaitegiaren arabera biltzen dituena.

Txosten hau, hiru txostenek osatutako materialetan bigarrena da. Hiru parteak: ebaluazioa, proposamenak eta eranskinak direlarik.

# b. alde materiala eta egitura

## i. mantendu edo aldatu litezkeen esparruak

Atal honetan, ebaluazioan zehar bildutako ideiak proposamen bilakatu nahi dira. Ikastaldia hobetze aldera, mantendu eta aldatu beharreko esparruak aipatzea du helburu:

A. KOKAPENA

   a. Ikastaroa hasi aurretik parte-hartzaileei galdetegia pasa/ entrebista egin haien interesak ezagutzeko, gaitasunak… horren arabera ikastaldia moldatzeko, beraiekin batera prestatzeko.
   b. Kokapen saioa. Ikastaldi hasieran emandako jarraibideei denbora gehiago eskaintzea egokia izan daiteke, orokorrean ikastaldiko partaideek ezagutzen ez duten testuinguru berrira egokitu eta autonomoagoak izateko aukera izan dezaten.
   c. Paisaia linguistikoa. Gelan munduko eta euskal herriko mapak izateak, mundu mailan eta euskal herrian kokatzea ahalbidetu dezake. Parte-hartzaileak nondik datozen eta zer toki ezagutuko dituzten ikusi ahal izateko, beren burua hobeto kokatzeko. Mapekin batera, hortaz, plangintza izatea komenigarria litzateke.
   d. Beren kabuz mugitzea errazteko, tren, autobus ordutegiak eskura jarri daitezke.
   e. Formakuntzatik kanpoko planek taldea sendotzen eta bakoitzaren intereseko ekimenak topatzen lagundu dute, hauek mantentzea komeni da.
   f. Era berean, pisuen antolaketak ere harremanak sendotzen lagundu du. Hau da mantendu daitekeen beste puntu bat.

B. IKUSPEGIA

   a. Ikastaldian zehar, hizkuntza biziberritzeari lotuta ikusten diren hainbat adibide, ikastaldiko parte-hartzaileen errealitateetatik asko urruntzen dira. Euskal herria eta Hego Ameriketako kasuen arteko ezberdintasunak lantzeak frustrazioa ekiditen lagun dezake. (aurrerago, bigarren partean, puntu honekin lotuta dauden hizkuntzaren historia eta irudia lantzen dira).
   b. Euskal historia lantzeko modua birpentsatu liteke. Izan ere, Euskal Herriko historia zerotik hasita azaltzen hastea zaila izan daiteke. Data, izen, gertaeraz jositako azalpen luzeak ekidin eta puntu hau beste modu batera ematea komenigarria izan daiteke. Horrela, entzuleentzako interesgarria izateaz gain, haien errealitateak aztertzeko ere baliagarria izan dadin. Ildo honetan kokatzen da adibidez Josu Larrinaga Arza soziologoaren “Euskal musika kosmikoak” liburua. Euskal Herriko historia, urte haietako musikari erreparatuta aztertu du liburuan.
   c. Gai polemikoak landu. Immigrazioa, a eredua.. motibazioa eta gertutasuna mugimenduak instituzionalizatuz doazenean nola mantendu… euskarak topatzen dituen zailtasunak azaldu.

C. FORMAKUNTZA ERRAZTEKO
    a. Ikastaldiaren momentu jakin batzuetan errepaso egunak oso erabilgarriak izan dira, ideiak freskatu, argitu eta laburtzeko. Ekimen hauek mantentzea komenigarria da.
    b. Aipatu berri ditugun errepaso egunekin batera, landutako materialen gaineko laburpen, gogoeta eta material gehigarriak banatzea erabilgarria izan daiteke, batez ere, parte-hartzaileek nahi duten gaietan sakontzeko erraztasun handiagoa izan dezaten.
    c. Ikastaldian zehar “aipu” batzuk sortu dira: “hizkuntzaren zuhaitza”, “argamasa” edo “ ez gara medusak” modukoak. Horrelako adibide bisualak eta memorizatzeko errazak erabiltzen jarraitzea guztiz gomendagarria iruditzen zait.

D. GARABIDEREN ARDURA BANAKETA
    a. Koadernoko ariketen metodologia birpentsatu, ikastaroaren pisua hobeto banatze aldera.
    b. Aurreko puntuarekin lotuta, garabideko “tutoreak” izendatu daitezke, gaien arabera adibidez, taldeak sortuz, gertuko jarraipena egiteko.
    c. Parte-hartzaileekin etorkizunerako plangintza haiek joan aurretik zehaztuta uztea komeni da, sarea mantendu dadin.

E. MATERIALAK
    a. Hartu-emana bultzatzeko material akademikoak formatu gehiagotan eskuragarri jarri daitezke, parte-hartzaileekin batera sortu daitezke, materialak elkarbanatzeko apala jarri daiteke, edota hizkuntzak bultzatzeko dekalogoa sortu.
    b. Bisitetan inbertitzen den denbora aberasgarriago izan dadin, bisitatuko diren tokien informazioa aurretik blogean jartzea gomendagarria da. Ondoren bisiten gakoak hobeto bildu/ eztabaidatu litezke horrela.
    c. Finantzaketa iturriak gai zaila dira garatu nahi diren proiektu gehienentzat. Esparru honi tarte bat eskaintzeak parte-hartzaileen motibazioa mantentzen lagundu lezake.

F. PARTE-HARTZAILEEN ARDURA BANAKETA
    a. Ikastaldi bukaerako memoria, parte-hartzaileek egin dezaketen bilketa lan erabilgarria da. Batetik, beren arteko harremana sendotu eta interesak lantzeko. Bestetik, Garabideko bazkideek ere eskura izan lezakete.
    b. Parte-hartzaileek antolatutako eguna/ ekintzak egin litezke, ikastaldiaren jakintza zirkularra aberasteko. Parte-hartzaileek hitza gehiagotan hartzeaz gain, gainontzekoek ikasteko aukera izango genuke.
    c. Gogoetarako gaiak (hizkuntza eta bizikidetza) mahai gainean jartzeak, ikuspegi ezberdinetako ekarpenak biltzea ahalbidetu du. Puntu hau mantentzea ezinbestekoa da.

d. “Etxeko” euskarriak garrantzia handia du kanpoan gaudenean, eta gehiago talde-lanetan gaudenean. Parte-hartzaileek beren komunitateekin “Skype” egiteko tartea izan beharko lukete.

### ii. planifikaziorako proposamena

Ebaluazioan ikusi dugun moduan, ikastaldiko plangintzaren arazo nagusiak denbora falta eta eskola-bisita oreka falta izan dira. Denboraren arazoari aurre egiteko hainbat irtenbide daude: ikastaldia luzatzea, edukiak laburtzea edo edukiak emateko modua aldatzea adibidez. Beste bien aldeko autua egin badaiteke ere, edukiak emateko modua aldatzeak beste bi ateak zabalik uzteaz gain, ikastaldia aberastu lezakeela uste dut.




Edukiak hiru bloketan banatzea proposatzen dut: oinarria, adibideak eta planifikazioa. Astetik astera formakuntza orduek, bakoitzaren proiektua garatzeko, denbora gehiago uztea da asmoa.

Metodologia honek, formakuntzatik kanpoko ordutegi horrek, alde batetik Garabideri: jarraipena egiteko, aholkularitzarako, kontaktuak lortu eta antolaketa lanetarako denbora eskaintzea eskatzen dio. Bestalde, formakuntza oinarrizko orokortutik, espezifikoagora igarotzean: formakuntza ez da bat-batean bukatzen. Horrela, etorkizunean garatu nahi diren proiektuetan lan egiteko esperientzia eta konfiantza garatuz.

Pasaden ikastaldia 140 ordukoa izango zela aurreikusi zen, ondoren 160 baino gehiagoko izan zen. Horregatik, maniobra-tartea izateko, planifikazioa 100 ordukoa izan daiteke: 45 oinarrizko blokea lantzeko, 30 adibideak ikusteko eta 25 hertsiki proiektuei eskaintzeko. Bloke bakoitzaren barruan ere, eskola orduek egunetik egunera bisita orduei tartea uztea da ideia.

### iii. gaitegi proposamena

| IKASTALDIAN LANDUTAKO GAIAK | | PROPOSAMENA |
|---|---|---|
| 0- Sarrera<br>1- Hizkuntza biziberritzea, sarrera teorikoa | moldatuta | 1- BLOKEA, sarrera<br>1.1 sarrera<br>1.2 hizkuntzaren boterea eta irudia<br>1.3 testuinguru soziopolitikoa |
| 2- Euskara biziberritzearen gakoak<br>3- Hizkuntza-politika eta planifikazioa<br>4- Politika publikoa eta erakunde sozialak | <br><br>3- blokera<br>3- blokera | 2- BLOKEA, adibideak<br>2.1 euskararen adibideak<br>2.2 euskara eta hegoaldeko hizkuntzen arteko ezberdintasunak<br>2.3 hegoaldeko ereduak |
| 5- Hegoaldeko diagnostikoak<br>6- Testuinguru soziopolitikoa<br>7- Hizkuntza biziberritzeko estrategiak | <br>2- blokera<br>1- blokera | 3- BLOKEA, proiektuak garatzea<br>3.1- hizkuntza politikak, planifikazioa eta parte-hartzea<br>3.2- hegoaldeko diagnostikoak |

Gaitegi proposamen honek, ikastaldian erabilitako gaitegia du oinarri. Bertako parte batzuk mantendu, beste batzuk moldatu eta gutxi batzuk gehitzen ditu proposamenak ikusi daitekeen moduan.

Ondoren, alde akademikoan topatuko ditugun garatutako proposamenak, taula honetan “1-BLOKEA”n kokatuko lirateke. Hizkuntzaren boterea eta irudiari lotutako materialak dira hauek. Azkeneko atalean, ordea, hiru blokeetako bisitetarako proposamenak biltzen dira.

## c. alde akademikoa

Programazio akademikoaren ageriko zeregina tresna teorikoak eskaintzea bada ere, programazioa bera, taldea sendotzeko ere erabili daiteke. Horregatik, programazioa egiterako orduan, partaideen interesak kontutan izatea komeni da. Haien interes eta beharrei erantzun edota dagoeneko dituzten tresnak kontutan izateko, galdetegiren bat izatea erabilgarria litzateke beraz. Bestalde, interesak asetzeaz gain, taldea sendotze aldera, gustura egotea ezinbestekoa da. Horretarako, alde akademikoa aurkezteko modua erdigunean kokatzen da, baita praktikaren uztarketa ere. Ezaugarri hauek betetzeko asmoarekin, hemen proposamenak.

### i. boterea

#### 1. boterea eta hizkuntza

Hizkuntza eta boterea hertsiki harremanduta dauden esparruak dira, eta harreman honen gainean sakontzeko “Language and power” (2009) liburua tresna egokia delakoan, obra hau hartuko dut oinarritzat testua egituratzeko. Hizkuntza bizitza sozial eta politikoaren botere harremanetan sartzen da. Talde boteretsuek hizkuntzaren erabileran eragiten dute, aldi berean, taldeak hizkuntzaren bidez ere ahaldundu daitezke. Diskurtsoaren botereari aurre egiteko, hizkuntza estrategiak garatu ditzake norbanakoak (Mayr eta Simpson 2009, 2.or).

BOTEREA:

Botereak baliabideak eskuratzen laguntzen duen, ala, alderantziz baliabideek boterea eskuratzeko balio duten galdera zaila da. Mayr eta Simpsonek (2009, 2.or) lehen aukeraren alde egiten dute, baliabide sozialak eskura izateak boterea ematen duela argudiatuz. Baliabide hauen artean: hezkuntza, jakintza eta osasuna topatzen ditugu. Hauen bitartez autoritatea, estatusa eta influentzia eskuratzen dira, besteak mendean hartu, beraiengan eragin eta manipulatzeko tresnak hain zuzen ere.

Botere harremanak menderatze- zein onarpenaren-estrategien bitartez egituratzen dira. Bigarrena bereziki interesgarria iruditzen zait, onarpen estrategiak, estatus banaketaren zilezgitasun-ustea duelako bere baitan, horregatik datozen ataletan honen gainean sakonduko dut. Boterearen bi tradizio hauek azaltzeko, Max Weber eta Antonio Gramsciren ekarpenez baliatzen dira Mayr eta Simpson (2009, 2-3.or):

1. Botere zuzentzailea. Max Weberren (1864-1920) ikertutako ildoa da, Estatua eta bere instituzioek ezarritako botere zuzentzaileari erreparatzen diona. Boterea menderatzeari lotuta ulertzen da ikuspegi honetan, indar-instituzionalari lotuta. Gainera, zilegitasun-prozesu honek bere baitan du, kontran agertzen diren taldeen zilegitasun-eza ere.

2. Botere limurtzailea. Antonio Gramsciren (1891-1937) ekarpenen ildoa da, talde dominatzaileek, mendekoak konbentzitu eta beren balioak hegemoniko bilakatzearen prozesua da. Horrela, balio hegemonikoak, jarrera, iritzi eta sinesmenak eratzen ditu, errutinaren bidez, "natural" edo "zentzu-komunekoak" direla sinestera arte.

   Gramsciren teoriaren arabera, gizarteratzeko prozesuan parte hartzen duten instituzioen bitartez (familia, hezkuntza sistema, eliza eta komunikabideak esaterako), talde menderatzaileek, gizartean posizio egonkorragoak eskuratu ditzakete, Estatuaren botereaz baliatuta baino . Onarpena da prozesu honen muina, onuraz beteriko dinamika batean murgilduta aurkezten delako. Bestalde, talde dominatzaileek beren posizioa mantentzeko aipatutako tresnen erabilera egiten jarraituko dute aurrerantzean ere, hizkuntza baliatuz noski.

HIZKUNTZA ETA KOMUNIKAZIOAREN BITARTEZ BOTEREA LORTZEA

**metodoa:** zilegitasuna edo behartzea
**tresnak:** aliantza politikoak eraikitzea, adostasuna edo zilegitasuna bilatzea eta behartzea.
**aplikazioa**: gero eta gizartean zilegitasun gehiago izan, orduan eta hertsaketaren behar gutxiago.
**eragina**: hizkuntzaren bidez egiten den errepresentazioak, identitate, sinismen, jarrera, praktika eta diskurtsotan eragiten du.

BOTEREA ETA HITZA:

Elkarrizketetan botere-harremanak ematen dira, eta estatus ezberdintasun hauen arabera ezartzen dira hizlari bakoitzaren eskubide eta betebehar diskurtsiboak, hizkuntzaren erabileraren lotuta daudenak. Mayr eta Simpsonek (2009, 10.or) honen harira, elkarrizketaren boterea eskuratzeko gako batzuk aurkezten dizkigute. Hasiera batean, begi-bistakoa izan daiteke galderak egiten dituenak izan ohi duela elkarrizketaren boterea. Izan ere, galderen bitartez, elkarrizketa bideratu eta bestearen erantzunak baldintzatzeko aukera du hizlariak. Baina hau ez da gako bakarra.

Adibidez: irakasle-ikasle harremanean, ikasleek txanda eskatu behar dute hitz egiteko. Irakasleak du hitza eta boterea eta berak erabakitzen du nori eman. Ikasleak esan dezakeena ere baldintzatu dago, irakaslearen galderen erantzunak izan behar dira edo testuinguru eta gaiari lotutako eranskinak (Mayr eta Simpson 2009, 11-12. or).

Adibidean azaldutako botere-asimetria diskurtsiboa, diskurtso instituzionaletan [1]ere ikus dezakegu. Boterea duen pertsonak, bide batez: pausak eta isiluneak behartzeko eskubidea du, gaia hautatzeko, galderak egiteko, bestea isilarazteko... Bestalde, elkarrizketa bideratzen duen pertsonaren pribilegio da anbiguotasunaren erabilera ere, gainerakoei zehaztasuna eskatzeko eskumena du, baita bere entzuleen adostasuna edo kolaborazioa bilatzeko ere. Beste hizlariaren ekarpenak errepikatu, aldatu eta zalantzan jartzea ere bada elkarrizketan gainetik dagoenaren aukera (adibidez: “... orduan, esaten ari zarena da…”) Mayr eta Simpsonen (2009, 13. or) arabera. Hala ere, menderatze-gako hauen kontra egiten saiatzea badagoela ikusiko dugu datozen ataletan.

ELKARRIZKETETAN BOTEREA IZATEKO GAKOAK:

1. **Elkarrizketa bideratzea**: galderak egin, gaiak proposatu, beste hizlarien ideiez baliatu.
2. **Hitza kudeatzea**: hitza eman eta kendu.
3. **Testuinguruaren araberako eskubide eta betebeharrez baliatzea**. Anbiguotasuna eta zehaztasuna komeni den moduan erabili.

[1] Hizkuntzari lotutako sinbolo eta erritualek bizitza politikoan duten garrantzian gehiago sakontzeko David Kertzerren “Ritual, politics and power” (1988) liburuko lehen atala “the power of rites” oso gomendagarria da.

## 2. feminismoa eta arraza

EZBERDINTASUNA ETA MENDERAKUNTZA: GENEROA ETA ARRAZA

Generoa eta hizkuntzaz ari garenean, bi galdera etortzen zaizkigu burura: batetik emakume eta gizonezkoek hizkuntza modu ezberdinean erabiltzen ote dugun eta zergatik; beste aldetik sexismoa hizkuntzaren bitartez ere gauzatu eta transmititzen den. Gaietan sakontzen hasi aurretik baina, sexua eta generoa bereiztea garrantzitsua da. Linguistikak zein genero teoriak bi termino hauek bereizi egiten ditu. Sexuaz ari garenean, kategoria biologiko eta psikologikoaz ari gara; generoaz ari garenean aldiz sozialki eraikitako kategoriaz ari gara. Bereizketa argia da; gainera, sexua termino estatikoa den bitartean, generoa termino dinamikoa da; hau da, testuinguruaren arabera aldatuz doa. Gizartearen sailkapena izanik, gizartea edo norbanakoa aldatzean, genero sailkapena ere aldatzen da. Simone de Beauvoir feminista frantsesak zioen "Ez gara emakume jaiotzen, emakume bilakatzen gara". Egiaztapena, noski, gizonezkoei ere aplikagarria da (Mayr eta Simpson 2009, 15. or).

Generoa, gizarte eraikuntza izateak, generoaren araberako gizarteratze prozesua izatearekin lotuta dago. Hau da, sozialki eraikitako klasifikazio horren arabera jokatzea espero da. Emakumezko zein gizonezko modura hezi diren pertsonek testuinguru bakoitzean aproposa dena ezberdin barneratu dute, horregatik, erabiltzen dute hizkuntza modu ezberdinean (Mayr eta Simpson 2009, 16. or).

Bestalde, androzentrismoa, gizartean ez ezik, hizkuntza ere ematen da. Genero maskulinoa normala dena izendatzeko erabiltzen da, femeninoa aldiz aldaerak izendatzeko. Guzti honek inplikazio politikoak ditu. Genero ezberdintasunei azalpen biologikoak eman izan zaizkie, naturalak, aurretik aipatzen genuen zentzu komunaren argudioa erabiliz. Horrela diskriminazioa justifikatzen da, emakumezkoei rol jakin batzuk atxikitu (ama, zaintzaile, sexu grinik gabeko gizaki…) eta gizonezkoen boterea babesten da hizkuntzaren bitartez ere. Emakumeei atxikitzen zaizkien lanak, gainera, gizartean errekonozimendu gutxiago izateaz gain, bere izaera naturalarekin lotzean, errekonozimendua bera ere kentzen zaio maiz. Guzti honengatik, determinismo biologikoa feminismotik kritikatua izan da (Mayr eta Simpson 2009, 21. or).

Giza arrazak ez dira existitzen, arraza sozialki eraikitako kategorizazioa da. Arrazez ari garenean ezaugarri fisiko orokor batzuk dituzten pertsonen izendapen orokorraz ari gara. Sailkapen honek ideia jakin batzuk lotzen dizkio ezaugarri fisiko jakin batzuei, aurreiritziak. Sailkapen honen arabera, hortaz, pertsonaren ezaugarriak jakintzat ematen dira eta jarrera jakin bat espero da. Sailkapen honek, beraz, klase eta generoarekin gertatzen den moduan, botere harremanak eraikitzen ditu, kasu honetan arrazakeria. Argudio arrazistek, esaterako diskurtso abertzaleen alde egin dezake, immigrazioaren kontrako jarrerak garatu, edo pertsona jakin batzuekiko jarrera paternalista izatera eraman. Hasiera batean agerikoak diruditen diskriminazio hauek, modu leunagotan ere eman daitezke. Esaterako, futbolean maiz herrialdeen arteko "gerra" modukoak irudikatzen dira (Mayr eta Simpson 2009, 17-18. or).

Sexismoa eta arrazakeria beraz, arazo berdinaren ondorioak dira. Argudio biologikoetan oinarritutako diskriminazio naturalizatua dira biak. Diskriminazio egoera honen ondorio dira esaterako Robin Lakoff-ek zerrendatzen dituen emakumeen hizkeraren ezaugarriak: emakume-rolei lotura dagoen lexikoa (kolore gama zabalagoa esaterako), adjektibo hutsalen erabilera (estetika eta zaintzari lotuta), ziurtasun eza erakusten duten hitzak (bueno, horrelako zerbait…), hezibide oneko, zalantzazko eta gertutasun hitzak (ezta?, txiki, maitia, mesedez…), hitza ematea, broma gutxi egitea… (Mayr eta Simpson 2009, 25. or)

## 3. umorea

Umorea berezko ezaugarri modura dute gizarte guztiek, horregatik ezin dugu alde batera utzi hizkuntza eta boterearaz ari garenean. Umoreak forma ezberdinak ditu: parodia, ironia, satira… faktore kulturala da eta  bizitza pertsonal zein politikoko harremanetan intrintsekoa da. Umorea erreminta da, botereak errepresio eta ridikuluan uzteko erabiltzen duena, eta botere gutxiago dutenek erresistentziarako. Umorea aurretik aipatu ditugun faktore guztiekin lotuta dago (Mayr eta Simpson 2009, 28. or).

Umoreak estrategia anitz ditu: zentzu eza, eduki literala eta esanahia bat ez etortzea, jarrera eta testuingurua bat ez etortzea, egoeraren tentsioa leuntzeko erabiltzea, tentsioa probokatzeko… Hau da, umoreak diskurtsoaren arau sozialak apurtzen ditu. Horregatik, gai polemikoa ere bada, manipulazio eta umorearen gaineko mugen inguruan eztabaida pizteko bidea irekitzen duena (Mayr eta Simpson 2009, 29. or).

Badirudi, umorearen gakoa inkongruentzian dagoela. Hizkuntza mailan (gramatiko edo hiztegiari lotuta), maila diskurtsiboan (esanahi bikoitza edo egoerari dagokion erregistroa ez erabiltzea) edo testuinguru sozialari atxikituta egon daiteke inkongruentzia hori.

## 4. hizkuntzaren hierarkiak

### LEGEA, IRAGARKIAK ETA HIZTEGI KAPITALISTA

Hizkuntza, esparru guztietara edatzen da, guztietara barneratzen da. Baita sistema judizialera ere. Sistema judiziala seguruenik boterearekin lotuen dagoen sistema da, eta bere “hizkuntza” linguistikatik aztertu izan da (Mayr eta Simpson 2009, 34. or).

Bestalde iragarkietan erabiltzen den “hizkuntza” topatzen dugu, marketinak produktu edo zerbitzu jakin bat saltzeko helburua du, eta beraz mezuak helarazteko modua aurretik aipatutakoaren oso bestelakoa da.

Honekin lotuta daude, kapitalismoa eta diskurtso kritikoan topatu ditzakegun hainbat hitz-pare: ekonomiaren globalizazioa vs. ekonomia kolonizatzailea; hezkuntzaren liberalizazioa vs. hezkuntzaren merkantilizazioa; esklusio soziala vs. pobrezia; lan-ordu malgutasuna vs. esplotazioa…(Mayr eta Simpson 2009, 38. or)

### HIZKUNTZA POLITIKORAKO ESTRATEGIAK

Aristotelesek zihoen gizakia animalia politikoa dela. Politika beraz, ez da modu profesionalean esparru politikoan lan egiten dutenei mugatzen. Dagoeneko ikusi dugu hizkuntza eta boterea hertsiki lotuta daudela. Hizkuntza diskurtso politikoan ezinbesteko atala da. Hizkuntzak helburu politikoak lortzeko estrategia erretorikoak eskaintzen ditu (Mayr eta Simpson 2009, 41. or).

Linguistika kritiko eta diskurtsoaren analisi kritikotik, hizkuntzaren ustezko gardentasun eta neutraltasuna deuseztatu da. Are gehiago, diskurtsoaren analisi kritikotik, diskurtsoa botere politikoaren birprodukzioarekin lotzen da. Baina, zer da bada diskurtso politikoa? (Mayr eta Simpson 2009, 42. or)

Burura etortzen zaigun lehen gauza, diskurtso politikoa politikariek sortutakoa dela izan daiteke. Baina, politikoa dena egunerokotasunean dago, beraz, asko gehiago edo gutxiagorekin, edonon topa dezakegu. Jendea ez politikaren ontzi pasibo hutsa. Askok politikagintzarekiko konfiantza falta nabaria dute, agian politikagintzak manipulaziorako duen abileziagatik. Bestalde, modernitatearen ezaugarri dira talde partizio eta identifikazio sozial berriak, beraz baita diskurtso berriak ere. Diskurtso berri hauetariko askok “bizi estilo” lelopean identifika ditzakegu. Esparru politiko espezializatuak ere, estilo aldaketa izan du, mezuak aldatu egin dira, sakrifizio eta proiektu kolektiboak alderatu eta autu pertsonalaren aldeko diskurtsoak garatuz, atzean norbanakoaren erantzukizuna ezkutatzen dutena (Mayr eta Simpson 2009, 43. or).

George Orwellek manipulazio linguistikoan oinarritutako amesgaizto politikoa irudikatu zuen pasaden mendean. Manipulazio horrekin lotuta, hona entzuleak geurera ekartzeko estrategia batzuk:

-Aurresuposizioa eta inplikazioa: informazioa bota eta entzuleak esanahia asmatu eta ondorioak ateratzea eramaten duen estrategia da. Ideiarekiko ardurarik ez izateko modu bat da. Estrategia hau iragarkietan erabiltzen da bereziki, izan ere, modu honetan irudikatutako ideiak atzera botatzeko zailak direlako. Bestalde, estrategia hau erabili ahal izateko esaldi bakar batek ez du balio izaten eta mezuaren igorle eta jasotzaileak testuinguruaren araberako jakintza bera konpartitu behar dute.

-Metafora: erretorika politikoaren gakoetako bat da. Kontzeptu politikoak eraiki eta mundu ikuskera irudikatzeko tresna dira. Metaforak kontzeptu baten ulerkera beste irudi batekin ordeztuz lortu nahi du. Metaforek asmo argiak izan ditzakete edo subliminalagoak izan (adibidez “bidean galduta” egotea, bizitzako krisi uneei erreferentzia egiteko).

-Izenordainak: pasiboak eta nominalizazioa ardurari uko egiteko erabili ohi dira (besteek egindako kalteak). “Gu” ardura banatu eta taldea indartzeko erabili ohi da, pertsuasiorako (gure etorkizuna).

-Eufemismoak: errealitateari erreferentzia egiteko karga negatibo gutxiagoko hitzak erabiltzea. Batez ere gai polemikoetan egin ohi da.

-Paralelismoak: ideia antzekoak egitura gramatikal berarekin aurkeztean datza, askotan hitz errepikapena ere erabiliaz. Mezuaren atala nabarmentzeko erabiltzen da (adibidez, … gaur, bihar eta beti).

Bestalde, diskurtso politikoak honako funtzio estrategikoak ditu:
-Koertzioa: nagusiki hizlariaren baliabide eta boterearen araberakoa da. Koertzioaren adibide argia dira atzean zigor legal edo fisikoak dituzten diskurtsoak (legeak, aginduak, arauak…).

-Erresistentzia, oposaketa eta protesta: Diskurtsoa erresistentzia estrategia modura erabili daiteke “alderantzizko diskurtsoa” eratuz, hau da, humorea erabiliaz, jargoiak edota hitz egiteko modu alternatiboak.

-Legitimatze eta deslegitimatzea: Legitimatze prozesu orok, estrategia linguistikoak behar ditu. Norbere buruaren justifikazioa, norbere buruaren aurkezpen positiboa eta autoridadearen eskaera dira diskurtso honen atalak. Bestalde, legitimazio prozesuak, “bestearen” deslegitimazioa ere bere baitan du, hau oso agerikoa suertatzen da hauteskunde kanpainetan.

-Errepresentazioa eta errepresentazio eza: kontrol politikoak, informazioaren kontrola barnebiltzen du. Errepresentazio eskasa edo eza eta eufemismoa dira informazioa estaltzeko taktika batzuk.

## 5. turismoa

TURISMOA ETA GARAPENA

70. hamarkadatik, nazioarteko finantza-erakundeek, turismoa hegoaldeko herrialdeentzako garapenerako tresna modura aurkeztu zuten. Gauzatu den turismo ereduak, ordea, hazkunde ekonomikoa ekarri badu ere, hobekuntza horiek ez dira giza garapeneko adierazleetan islatu. Hau da, hazkunde ekonomiko horrek ez du hobekuntza sozialik ekarri. Fenomeno hau bi baldintzatan oinarritzen da:

Alde batetik, inbertsio turistiko arloan hartutako erabakien gaineko kontrol falta dago. Bestetik, turismo eredu honek ez ditu kontuan hartzen tokian tokiko gizartea eta kultura.

hau guztia kontuan hartuta, batzuek "turismoaren kolonizazio berriaz" (neo-colonización turística) hitz egiten dute. Hiru arrazoi nagusi daude kolonizazio berriaz hitz egiteko:

Lehena: nazioarteko turistaren ongizatea bilatzen da, bertako populazioaren kaltetan. Bigarrena: negozio turistikoarekin lotuta, nekazaritza-lurrak eta hondartzak pribatizatzen ari dira. Hirugarrena: zerga-salbuespena, ingurumenaren degradazioa, lan-eskubideen bortxaketa… askotan ematen dira eredu turistiko honetan.

Mundu mailako Turismo Erakundeak (OMT gazteleraz) dioenez, turistek bere egonaldietan ordaintzen dutenaren %75 arte, enpresa turistiko horien jatorrizko herrialdeetara itzultzen dira, Iparraldeko herrialdeetara. Turismo eredu honek, beraz irabazi marjinalak besterik ez ditu uzten turismoaren herrialde hartzailean.

Nazioarteko kooperazioak orain dela hamar bat urte jarri zuen arreta arazo turistiko honetan. Hala ere, turismoa garapen tresna modura ulertzeari utzi gabe, politika parte-hartzaileagoen alde jarri ziren: ekimen turistikoan antolaketa eta kontrolean aktore lokalak jarriaz.

Turismo Arduratsuaren Foroak "Turismo y desarrollo: Experiencias desde la cooperación internacional" artikuluan, aurreko azalpenak aurkeztearekin batera, hiru esperientzia aberasgarri aurkezten dizkigu: Ekialdeko Timor (Asia)  landutako "turismo etikoa", Cabo Verden (Afrika) egindako "turismo jasangarria" eta Ekuadorren (Amerika) gauzatutako "garapen lokal jasangarria".

### ii. hizkuntzaren irudia

Irudiak, hitz egin aurretik mezuak bidaltzen ditu, horregatik, komunikatzerako orduan irudiaz baliatzeak komunikatzaileari boterea ematen dio. Hizkuntzari dagokionean, hizkuntzak ere badu bere irudia. Hizkuntza pertsona edo ekimen zehatzekin lotzen dugu, klasifikatzen ditugu, aurreiritziak ditugu horien gainean. Soziolinguistika klusterrak[2] euskaren irudia, gizartean duen harrera eta aurreiritziak 9 puntutan biltzen ditu, hemen laburtuta ditugunak:

EUSKARA GIZARTEAN: IRUDIA, JARRERA ETA AURREIRITZIAK.

kultura

- Euskara, euskal kulturaren erdigunean kokatzen da, oro har, gizartean.

gizartea

- Jendeak Euskal Herrian egoera soziolinguistikoaren gainean, behar baino kontzientzia txikiagoa duela uste da.
- Gizartean euskararen irudia eskolari eta haurren munduari lotuta omen dago eta honek egunerokotasuneko erabilera kaltetzen du.

hizkuntza

- Egunerokotasunerako gaztelaniaz jakitea beharrezkoa da. Euskara, ordea, beharrezkoa da, batez ere, lan-mundua eta hezkuntza-sistemarekin lotuta.

euskararen irudia

- Euskararen aurkako jarreraren eragile bezala, bi faktore aipatzen dira: normalizaziorako hainbat neurri inposaketa bezala ulertzea eta euskara politikaren ikuspegi negatiboenarekin lotzea.
- Batetik, euskara gizartean joera politiko-ideologiko zehatz batzuekin lotzen da: muturreko euskal abertzaletasunarekin. Bestetik, batzuek uste dute, euskararekiko atxikimendua ikuspegi politiko zehatz batzuekin lotuta egon behar dela.

Hizkuntzak izango duen harrera, beraz, bere irudiarekin oso lotuta dago, eta irudia moldagarria izateaz gain botere-tresna ere bada.

Hizkuntzak esanahi anitz biltzen ditu, erabilera anitz dituen neurrian. Katarina Zdjelar artista serbiarrak artearen bitartez hizkuntza, ahotsa eta irudia landu ditu. Bere lanek inplikazio linguistiko zein politikoa dute. Identitate indibidual eta kolektiboen gainean egiten du lan.

[2] lotura: http://www.soziolinguistika.eus/node/5519

Abestien letrak abeslariaren arabera zentzua aldatzen duela aztertu du, baita atzerritarrei haien azentua galtzeko eskolak emateak duen kutsu politikoa, euskal rock erradikalak identitatean izan duen eragina… Hizkuntzaren bitartez gizartea biluzten du bere artelanetan.

Hizkuntzaren jokoan, jokalariak ezagutzea ezinbestekoa da. Beraz, hizkuntzaren azterketa beharrezkoa zaigu, honen barne dinamikak ulertzeko, hizkuntza erabili ahal izateko. Hizkuntzan ideiak islatzen ditugu, komunikatzeko eta hiztunen sentimenduetara iristeko tresna da, bere erabilera ere estatusarekin lotuta dago. Erabilerak, hizkuntzaren eta hiztunen gaineko irudia ematen du... Laburbilduz, hizkuntzaren erabilera ekimen politikoa da, ekimen hori kontzientea izan dadila da atal honen helburua.

## 1. marketing-a

### 1. ZEINUA

Zeinua, hizkuntzaren ikuspegitik zein semiotikaren (esanahiaren eraketa eta transmisioa aztertzen dituen esparrua) ikuspegitik aztertu daiteke. Biek zeinuaren egitura aztertu dute batez ere, esanahiaren gainean sakontzea ordea interesgarria da. Zeinuak ez dira ezer, hiztunak irudikatzen duena, asmatzen duena eta kodifikatzen duenaren irudia besterik ez. Esparru hau marketinetik aztertu izan da. Produktu bakoitza esanahiz aberasten da bere bidean zehar. Esanahien mapan produktuak kokatzeko, beraz, analisia ezin bestekoa da. Produktuaren helburuak, papera, eta bere aurkariaz aztertzen dira. Kontsumo jarrerak aurreikusteko, gakoa esanahiak ulertu eta erabiltzea da.

Kontsumitzaileak produktuarekin harremantzen dira eta esperientzia honetatik, esanahia sortzen da. Politika esparruan ere, marketina elementu zentrala da, entzulea konbentzitzeko teknikak.

### 2. MAKETINA: MARKA ETA IDENTITATEA

Marken funtzionamendua ulertzeko, analisi semiotiko-linguistikoa behar da Lidia Pellicerrek dioenez. Diskurtsoaren bitartez, produktuaren irudia sortzen da, identitate balioa esleituz. Materia ideia bilakatu eta ideia materia bilakatzen da (Pellicer 2010).




Egitura bera jarraitzen du Winner filosofoak politika teknologikoaren teoria proposatzen duenean. Teoria honen arabera, egitura teknologikoak ideologia baldintzatu dezake. Honen adibide da Manhatango zubia. Zubia baxuegia zen autobusak bertatik pasa zitezen, horrela,

teknologiaren bitartez, biztanleriaren egunerokotasunean eragitea lortzen zen. Autobusa erabiltzen zuten hiritarrak beltzak ziren oro har, egoera ekonomikoari lotuta. Horrela, zubiaren egiturak, gizarte klaseak banatzeko balio zuen, gatazkarik sortu gabe, egitura naturala bailitzan, banaketa ideologikoak sendotuz. Hizkuntzaren egiturarekin gauza bera gertatzen da.

a. Marka ez da objektua, tresna da.

Marka esanahi eratzailea da, esanahia esleitzeko prozesua da. Marka tresna bat da, ez dago objektuari lotuta. Marka ez da objektua, marka ez da gauza bat. Markak ez du objektuaren beharrik, ez du gorputzik behar, hori da bere puntu sendoena.

b. Markaren aukerak.

Objektuari esanahi esleitzeko errealitatera etengabe moldatu behar da. Objektuarekin dugun esperientziaren arabera eratuko da markaren esanahia. Kontsumitzaileak bizipenen bidez harreman afektiboa eraikitzen du objektuarekin, proiektatuz eta erabiliaz.

Markak etengabeko berrikuntza behar du, bizirik iraungo badu. Beti eraldatzen doa, moldatzen, garatzen. Marka, zerbait izatekotan metafora da, aukerak eta esanahiak sortzeko tresna.

c. Diskurtsoa.

Markak, bere identitatea sendotuko duen diskurtsoa behar du, bere izaera eta esanahia babesteko. Marka eta identitatea diskurtso anitzez osatuta daude.

Ideiak transmititzeko modua oso garrantzitsua da marka baten identitatea ikertzeko. Diskurtsoa igortzen denean, mezu izatera pasatzen da, izaera eraldatzailea duen ekintza diskurtsibo abstraktu, objektibo, ikusgarria. Ekintza honek mezuaren igorle eta hartzailea behar ditu.

Mezua igortzea, beraz, ekintza da. Mezuak abilezia, memoria, partaideak, ideiak, asmoak, egiturak… biltzen ditu. Igortzen den diskurtsoak eragin handiagoa izango du entzulearen errealitatera hurbiltzean, bere bizipenetara edo idealetara. Prozesua azaltzeko, artikuluak Sempriniren teoria semiotikoa (1993) erabiltzen du.



[3]

Diskurtsoak, ikuspegia aldatzeaz gain, diskurtsoa jasotzen duenaren esanahi produkzioa ere baldintzatzen du. Horrela eraikitzen da identitatea. Semprinik identitatearen mailaketa (1993) bat ere proposatu zuen. Mailaketak, identitatearen egonkortasun eta garapenean eragiten duten faktoreak agertzen dira.

i. Identitatea

Markak identitatea nola egituratzen duen azaltzeko, testuan Sempriniren (1993, 94) eskema erabiltzen da. Eskema horretatik abiatuta, diskurtsoaren arkitekturaren etapak bereizi ditzakegu, markaren zentzua aztertzeko, oinarriak identifikatzeko.

Azkeneko etapa, maila diskurtsiboa da; bertan egoera dena delakoa izanda, diskurtso berdina erabiliko da. Maila honetan kokatzen dira zeinua eta diskurtsoa. Aurreko etapa, maila narratiboa da; bertan egoeraren arabera moldatzen dira kontakizunak, baina ideia amankomunak dituzte. Dikotomietan oinarritutako kontakizunak izan ohi dira. Kontakizunaren egitura mantentzen da, baita ezaugarri konkretuak ere (lexiko jakin bat esaterako), detaile hutsalak besterik ez dira aldatzen. Maila honetan dago gakoa, bertan egiten dutelako bat esanahiaren mamiak eta adierazpenak, esanahia bertan egituratzen da eta esanahi horretatik eratortzen da ondoren ekintza. Azkenik, maila sakonenak, oinarrizkoak, markak berezko dituen kontzeptuak daude. Kontzeptu hauek ez dira begi-bistakoak, baina sumatzen dira, diskurtsoaren oinarria dira, sustraiak, Intuizioaren bitartez soilik antzeman daitezke. Estrategiaren maila da hau.

[3] Artikuluko eskematik laburtu eta moldatuta.



[4]

Behin maila bakoitza ezagututa, analisira joko dugu. Maila diskurtsiboan deskribapenak egiten dira, nola deskribatzen den aztertu behar dugu beraz. Maila narratiboan, egiturari erreparatu behar diogu, zer metodo eta estrategia erabiltzen diren. Maila axiomatikoan berriz, intuizioz, markaren berezko ezaugarriak identifikatzen dira.

Gogoan izan behar da, marka ez dela ezer diskurtsorik gabe, baina, diskurtsoa gehiegi aldatuz gero, marka bera aldatzen dela.

d. Ondorioak.

Aztertu berri dugun ikuspegi semiotikoaren bitartez, diskurtsoaren hezurtzea analizatu daiteke. Diskurtsoak ezaugarri arrazionalak, izaera ematen dio objektuari, marka eraikiaz.

## 3. HIZKUNTZA MORALA

"Gizakiari ulertzen duen hizkuntzan hitz egitean, bere burura iritsiko zara. Bere hizkuntzan hitz egitean berriz, bihotzera iritsiko zara". Nelson Mandela.

Hizkuntzak pentsamenduan eragiten duela pentsatzean ez da susmo okerra. Pinker (2007) psikologo kognitiboa eta hizkuntzalariak, zein Keysar eta Hayakawa (2012) psikologo kognitiboek ere baieztatzen dute. Bestalde, erabaki ausartagoak hartzen ditugu gure ama-hizkuntzan. Eremu moralean ere, erabakiak lehen hizkuntzan edo beste batean hartzen ditugunean ezberdintasunak agerikoak dira. Ikerketa ugari egin dira ideia hauek egiaztatzeko:"tranbiaren dilema"[5] edo "gaixotasun asiatikoa"[6] dira hauetako batzuk. Ondorioa honakoa izan da: esparru moralak pisu handiagoa du erabakiak ama-hizkuntzan hartzen ditugunean.

---

[4] Artikuluko eskematik laburtu eta moldatuta.
[5] Luis Pastorren "Hizkuntzaren moraltasuna, erabaki zure ama-hizkuntzan" artikuluan.
[6] Itziar Lakaren " Mandela was rigth: the foreing language effect" artikuluan.

## 2. hizkuntzaren eragin ekonomikoa

Ikastaldian zehar, aurretik buruan ez nuen ideia bat mahaigaineratu zen: hizkuntzak balio ekonomikoa izan dezake, eta du, euskararen kasuan behintzat. Beraz, hizkuntzaren irudiaren parte ere bada ezaugarri hau. Hizkuntza kulturari lotutako elementua izateaz gain, komunikazio tresna izateaz gain, produktu eta marka modura ere ikusi dezakegu. Hizkuntza, bere baitan, marka modura.

Ikastadian zehar bisitatutako erakundeetan hizkuntzaren gaineko ikuspegi anitzak ikusi ditugu. Batzuek esparru ekologikotik erreparatzen diote, botere harremanetatik besteek, identitateari lotuta… guztiek hizkuntza modu ezberdin batean saltzen dute. Hizkuntzaren balio ekonomikoari erreparatzeak, esparru afektibotik urruntzea ahalbidetzen digu besteak beste, jendarte zehatz bati iristeko ateak zabalduz. Ikuspegi honetatik, hizkuntzari hiru balio ekonomiko esleitu dakioke:

1. Hizkuntzari lotuta sortzen diren lanpostuak (akademiak esaterako).
2. Hizkuntzaren merkatuak sortzen duen eskari materiala (argitaletxeak adibidez).
3. Hizkuntza produktu modura saltzeak dakartzan onurak.
    a. Enpresek beren zerbitzuak euskaraz eskaintzean merkatu zehatz bati ateak irekitzen dizkiote. Hizkuntza marka modura erabiltzen dute.
    b. Hizkuntza bera produktu modura eskaini daiteke (titulazioak, diru-laguntzak lortzeko)

Modu laburrean azaldutako hizkuntzaren onura ekonomiko hauen adibide zehatzak irudikatzeko, hemen ikastaroan zehar landutako material batzuk:




[7] Emunen aurkezpenean erabilitako materiala.
[8] HPSko aurkezpenean erabilitako materiala.

## 3. hizkuntzaren ikerketa eta identitatea

### 1- EUSKALDUNAK IKERTZETIK, EUSKALDUNEK IKERTZERA

Euskaldunen gaineko lehen erreferentzia idatziak 1140 inguruko *Liber Sancti Jacobi*-ren V. liburuan topatzen ditugu, Donejakue bidea egiten zuten erromesentzako gidan. Honelako baieztapenak topatu ditzakegu bertan: "se diría estar contemplando a perros o cerdos comiendo [...] su lengua es [...] completamente bárbara" (jaten txakur edo zerriak dirudite [...] hizkuntza [...] guztiz barbaroa da) (Dendaleche 2005, 21.or).

Dirudienez, XII-XVII. mendeen artean kristautasuna finkatuz joan zen euskal lurraldeetan. 1610 inguruan, iparraldean Frantziako errege Enrique IV.aren agindupean Pierre de Lancrek euskaldunen arten ikusitako sorginkeriaren inguruan idatzi zuen. Bitartean, Espainiako inkisizioak Zugarramurdin sorginak epaitu eta erre zituen (Dendaleche 2005, 23-25.or).

Guillermo de Humboldtek, Frantziako iraultza ostean, 1797an euskal lurraldeak bisitatu zituen, 1801ean euskaldunen inguruko monografia idazteko. Humboltek ikerketa linguistikoan jardun zuen, hizkuntzak familietan sailkatuz eta jatorriak bilatuz. Beste hizkuntza batzuen artean euskara ere ikasi zuen. Bere ondorioa honakoa izan zen: hizkuntza eta hiztunen arteko harremana estua dela, hizkuntzak definitzen duela herria eta nazioa (Dendaleche 2005, 26.or).

1856ean Luis-Lucien Bonaparte linguistak euskararen inguruan idatzi zuen. Euskararen akademia sortzeko lehen saiakeraren arduraduna izateaz gain (Dendaleche 2005, 27.or), egun erabiltzen dugun euskalkien mapa ere egin zuen.

Bakoitzak bere modura, euskaldunen izaera bitxiaz idatzi zuten (Dendaleche 2005, 29).

Ondoren, VXIII. mendeko erromantizismoan, natura, tradizioak eta folklorearen goratzearekin batera turismoa hedatu zen euskal lurralde ustez idilikoan. Garai honetakoa da Dasconaguerreren (1867) obra. Bertan zintzotasun historikoak baino, pisu handiagoa du nostalgia erromantikoak, irudiak. XX. mendean zehar ere mantenduko zen euskaldunaren irudia da hau: euskal lurraldeak ez du parekorik, inbasio atzerritarren kontra egin eta bere irla linguistiko zein kulturala mantendu duen herri da, kristautasunak ez du euskal lurraldean satzea lortu. (Dendaleche 2005, 31-32.or)

Irudi hau mantentzeko, 1922an William Boisselek Baionan Euskal tradizioaren museoa irekitzeak garrantzia handia izan zuen, iraganari begiratzen dion lan etnografikoak. 1932an Donostiako San Telmo Museoak bide berdina jarraituko zuen, baita Bilbok ere (Dendaleche 2005, 33.or)

Ondoren, narratiba honetatik habiatuta, euskal etnografiak bere historia garatu zuen. Identitatea beraz, eraikia da, metafora da, botere iturri eta tresna. Etnografiari dagokionean, europar antropologoek deskolonizazio prozesuarekin batera, koloniak ikertzeari utzi

ziotenean, europa ikertzen hasi ziren. Garai honetakoa da europar antropologia arraziala (Zulaika 1996, 19.or).

## 2- HISTORIATIK NARRATIBA SORTUZ

1860an, euskaldunen bereizketa arrazialen inguruan ikertu zen, aurretik Humboldtek ireki zuen ikerlerroa jarraituz. Horrela, euskalduna objektu etnografiko bilakatu zen, europako indiginenak. Euskaldunen hizkuntza eta arraza ikertu ziren europatik. Ikerlerro honi jarraika, Urtiagako buruezurraren aurkikuntzak euskal etnografoei narratiba propioa garatzeko aukera eman zien. Ikerketarako objektu erreal honek, garaiko europar zientzien diskurtsoak erabiltzeko aukera eman zien ikerlari euskaldunei.

Barandiaran eta Aranzadik aurkitutako buruezurraren harira, euskaldunak kromainonen ondorengoak zirela ondorioztatu zen, euskaldunaren garapen biologikoarekin lotuta. Historiaren irakurketak, orainaren identitatea eratzeko balio dezake (Zulaika 1996, 25.or).

Zientziak sortutako narratibak, narratiba politikoari bidea zabaldu zion horrela. Euskaldunen gaineko etnografiak eta zientzia arrazialak, euskal abertzaletasunari diskurtsoa garatzeko tresnak eskaini zizkion, Sabino Aranaren diskurtso abertzaleari.. Identitatea ezberdintasun arrazial, linguistiko eta kulturaletan oinarritu zen (Zulaika 1996, 33.or).

Jasotakoa zalantzan jartzeak, ez du identitatea ezeztatzen, ikuspegia aldatu besterik ez du egiten. Euskaldunak adibide argia gara, modernidadean inmigrazioak eta diasporak izan duten pixua ikusteko (Zulaika 1996, 197.or).

## 3- INMIGRAZIOA ETA DIASPORA

Inmigrazioak Euskal Herriko gizarte egituran aldaketa nabariak eragin zituen. Herritarren jatorriari dagokionean, Hego Euskal Herriko biztanleriak sakoneko aldaketa izan zuen: 1973an, Hego Euskal Herriko biztanleriaren %73 zen Euskal Herrian jaiotakoa, ehuneko honen %53ak Euskal Herrian jaiotako gurasoak zituen, %8ak gurasoetako bat Euskal Herritik kanpo jaiotakoa zuen. %12ren gurasoak Euskal Herritik kanpokoak ziren." (Iraola 2012, 145.or). Inmigrazioaren garrantzia itzela izan da, gainera, inmigrazioak olatu hugari izan ditu. Bestalde, euskaldunak inmigrante izan dira ere hainbat herrialdeetan eta bertan beren hizkuntza eta kultura gordetzeko "euskal etxeak" sortu izan dituzte esaterako. Euskal diasporak, beraz, hizkuntzaren berreskuratzean bere bidea egiteaz gain, bere bizipenak ere elkarbanatu ditzake.

Egun, argudio esentzialistak eta biologikoak kritikatzen baditugu ere, narratiba guztien oinarriak modu kritikoan aztertu behar ditugu, iraganeko akatsak ez errepikatzeko. Narratibak dakiguna transmititzeko balio digu, elkarbanatzen dugun errealitatearen inguruan mezuak zabaltzeko. "Un grupo que se resiste a narrar su experiencia, o al que se le prohibe su propia narrativa, es un grupo que se priva de significados, representaciones, historias [...]. La pregunta inicial es [...] si cabe a los vascos de mediados del siglo XIX -un pueblo

marginal sin las instituciones del estado, sin universalidad, sin literatura- una narrativa nacional propia." ("Bere esperientzia kontatzeari uko egiten dion taldeak, edo esperientzia kontatzea debekatzen zaio taldeari, esanahiak ukatzen zaizkio, errepresentazioak, historiak [...] Lehen galdera honako da: [...] XIX. mende erdialdeko euskaldunek -estatuaren instituziorik gabeko herri marginalak, unibertsaltasunik, lieraturarik gabeak- narratiba nazionala izan behar duen") (Zulaika 1996, 37. or). Azken finean, narratiba izan dezakegun, autoridadea izan dezakegun galdetzea da.

4- EUSKARA, EUSKARAZ:

"Euskal kultura euskaraz baino ez da posible, ala espainolez edo frantsesez ere bai?"

Galdera honi bi erantzun eman izan zaizkiola dio Ibai Iztueta Azurmendik. Erantzunak euskal kultura ulertzeko moduaren araberakoak dira. Alde batetik, Txillardegik euskara euskal kulturaren ezaugarri bakarri zuenez, euskal kultura soilik euskaraz posible ez zela defendatu zuen. Bestalde, Ramón Zallok, euskal nortasunak anitzak direla argudiatuz, euskal kultura espainolez edo frantsesez ere posible dela argudiatu du.

Ibai Iztueta Azurmendiren proposamena ondorengoa da: toki batzuetan baiezkoa eta besteetan ezezkoa erantzutea komeni da, komenientziaren arabera. Galderari emandako erantzunak ere ondorioak dituela dio, eta beraz, ondorio horiei begira egin behar dela ere erantzunaren autua.

Hala ere, galderari erantzuna bilatzeaz gain, Ibaik, galdera bera formulatzeko orduan testuinguruari erreparatzea proposatzen du: hizkuntza gutxitua eta estaturik gabeko herria. Kultura bera ulertzeko moduen gainean ere gogoeta egiteko hizkuntza eta identitate kontzeptuak aztertzen ditu (Iztueta, 2015, 9.or).

2014an aurkeztutako doktorego tesiaren moldapena da liburua. Tesiak kultura eta hizkuntzen arteko harremanaren gogoeta egiten zuen.

5- EUSKAL KULTURA:

Euskal Herrian 1960ko hamarkadatik hona, euskal etnoidentitate berri(tu) bat sortu da. Euskal musikak "zenbait aldaketa sozial islatu ditu batzuetan, eta performatu, iragarri, erraztu, bideratu eta moldatu beste batzuetan". Sortu den musika, gizartearen emaitza da, beraz, beste esparru batzuen antzera, kontatu behar da. Liburuaren hipotesi nagusia honakoa da: "kontrakulturala den musika mota berri bat txertatzen da Euskal Herrian euskal kultura tradizionala [...] berrosatzen ari den fase historiko batean" (Larrinaga 2016, 9.or).

Honekin lotuta, Raul Zelik, Gara egunkariko zuzendariak liburua[9] kaleratu du azken egunotan. Raul Zelikek, euskal kultura tradizionala azken hamarkadetan zehar mugimendu kontrahegemonikoekin lotuta egon izan dela dio (esaterako Alemanian ez bezala).

[9] "La izquierda abertzale acertó" Txalaparta. Elkarrizketa ososa: http://www.naiz.eus/eu/actualidad/noticia/20171203/en-los-pueblos-pequenos-de-euskal-herria-hay-muchisimas-expresiones-de-contrahegemonia

Hau da, euskarari eta euskal tradizioari lotuta garatzen den mugimendua, aldaketa sozialekin lotuta dago, beraz, gizartea bera aztertzeko tresna badira, bertatik jaio direlako. Estatutik bultzatutako politikak, beraz, ikerlerro honetatik kanpo geratzen dira. Horregatik, politika hauen garrantzia ez ukatze arren, kronologikokia hau ere kontutan izatea garrantziskoa da, mugimendu sozialek izan duten testuinguru politiko eta legala gure ikuspegian barnebiltzeko (1979ko Autonomia Estatua Bizkaia, Gipuzkoa eta Araban; 203an Ipar Euskal Herriari estatus politiko propioa onartzea… esaterako).

1960tik euskal kulturaren berrosatzearekin batera, abertzaletasun berria sortzen da, eta musikak aldaketa prozesu interesgarriak bizi zituen (Larrinaga 2016, 9.or).

## 4. erlatibismo linguistikoa

Erltibismo linguistkoa, hizkuntzak pentsaera baldintzatzen duela esan nahi du. Honen gainean, Lionel Jolyk (2009) Jakin aldizkarian argitaratutako testua guztiz gomendagarri da nire iritziz. Atal honetarako erabili izanaz gain, datozen bi goiburuak testuan agertzen diren modu berean izendatuta daude ere.

Jolyren arabera, erlatibismo linguistikoaren jatorria Herder, Humboldt eta Sapirren irakasle izandako Boas-engandik dator gutxienez. Kontzeptu honek, hizkuntza eta pentsamendua lotzen ditu, eta beraz hizkuntza eta kultura. Teoria Descartesen tesiarekin lotzen du testuak: *cogito ergo sum*, pentsatzen dut, beraz banaiz. Desacartesen teoria erabiliaz, erlatibismo linguistikoak, hizkuntza batean pentsatzen dut, beraz, hizkuntza batean banaiz, esango luke. Baina, hizkuntza pentsamenduarekin, kosmobisioarekin lotzen bada, zerk bultzatzen gaitu pentsatzera? hizkuntza guztietan pentsatu daiteke?

### 1- DEFINIZIOA

Sapir eta Whorfen teorien mugak aztertzea, beraz, galdera hauei erantzuten lagundu lezake. Shapir Whorfek hizkuntza bakoitzak hiztunaren pentsaera determinatzen duela defendatzen zuen, hizkuntza bakoitzak kategoria sistema bereizia osatzen duelako. Honen adibide da inuitek elurra izendatzeko dituzten hitz anitzak, guk hitz bakarra dugunean. Guk ez dugu inuitk bezainbesteko hitzik errealitate hori sailkatzeko, baina izendatzen duten errealitate hori existitzen al da guretzat ere? Existitzen ez badira, izendatzen ez ditugulako da? Edo testuinguruan existitzen ez direlako z ditugu izendatzen? Dirudienez, errealitatea berdina izanda ere, izendatzeko modu anitz ditugu, sailkatzeko modu anitz daude.

1. Whorfen arabera, elebakarren kosmobisioak haien hizkuntzagatik guztiz baldintzatuta daude. Ikuspuntu hau bi aldetik jarri da zalantzan: Batetik, Chomsky eta bere jarraitzaileek munduko hizkuntzek uste zena baina egitura zabalagoa elkarbanatzen zutela frogatu zutelako. Bestetik Fishman eta beste autore batzuek, hizkuntzak, kultura baldintzatu baino, islatzen duela frogatu zutelako. Beraz, hizkuntza eta kulturak elkarri eragiten diote.
2. Sapirrek, hizkuntzak maila kontzeptualak baina sakonagoak diren guzak izendazeko funtzioa dutela defendatzen zuen. Hizkuntza eta pentsamendua bereizten ditu

Puntu hauetatik habiatuta, Lionel Jolyk (2009) sinpletasun baztertzearen alde agertzen da, erlatibismo linguistikoaren mugak aztertzearen alde. Euskara McDonald's-en eskatzeko erabiltzea kritikatzea, hizkuntzaren defentsa egitea, baina kulturaren esparru batzuetra mugatuta: kultura eta hizkuntza bereiztea esan nahi du. Bestalde, hizkuntza eta hitza bereiztearen alde agertzen da.

## 2- HIZTUNA ETA KOSMOBISIOA

Wittgesteinek zioen gure hizkuntaren mugak gure munduaren mugak direla. Hizkuntza eta hiztunaren gaitasuna bereiztu behar dira. Hizkuntza eta kosmobisioaren arteko harremana azaltzea zaila da, baina argi dago biek elkar eragiten dutela, hizkuntzak eta hiztunak elkar eragiten duten modu berean. Hizkunrtzaren aberastasun linguistikoak bere kosmobisioa baldintzatuko du, konteptualizatzeko gaitasunak bere abrastasun linguistiko baldintzatuko duen moduan.

Entzuleak manipulatu nahi dituztenek hauzi hau ondo ezagutzen dute, kontziente edo inkontzienteki. Orwellen (1949) 1984 liburuan gobernuak sortutako hizkuntza batez hitz egiten da, gizartearen pentsaera moldatzea helburu duena (beste tresna batzuekin batera). Hitz berriak sortzean, kosmobisioak aldatzen dira, fikzio zein erealitatean, konnotazioa ezberdinak baitira. Konnotazioa manipulaziorako erabilgarria izateaz gain, existitzen dena eta ez dena definitzen du, tabua dena eta ez dena, esna/ egin daitekeena eta ezin dena.

Baina, manipulazioa beti da txarra? Hobeto bizitzeko balio digunean ere? Eta manipulazioari izena aldatzen badiogu? Manipulazioa izan beharean “management” da oain, profesionalen lana, ongi ikusita dagoen aholkularitza lana.

Edonola, gizartearen ongizatea bilatzen bada ere, manipulazioak besteari zer komeni zaion dakiguna pentsatzea esan nahi du. Hizkuntza manipulatzea arriskutsua da, eta egunero egiten dugu normaltasun osoz. Hizkuntza beti dago aldatzen, moldatzen, dinamikoa da.

## 5. komunikatzearen garrantzia

TED HITZALDIAK

Hizkuntza, aurreko ataletan ikusi dugun moduan, tresna bat da besteak beste. Tresna hau egunero erabiltzen dugu, eginkizun gehienetan. Beraz, erabiltzen jakitea ezinbestekoa da, are gehiago kooperazio linguistikoan gidaritza lanetan dabilen jendearentzako. Hizkuntzak irudia izateaz gain, hizlariak ere irudia du, eta ezinbestekoa da mezuak transmititzerako orduan hau zaintzea.

Gai hauen gainean, TED hitzaldiak oso erabilgarrak suertatzen dira, izan ere komunikazioaren gaineko ideiak erabilgarriak izateaz gain, hizlariak oso trebeak direlako, lidergoaren adibide ona dira. Atal hau, beraz, TED hitzaldietako edukietan oinarritzen da. Gainera, horrelako formatu bat kooperazio linguistikorako egokia izan daitekeela uste dut. Merkea eta sinplea izateaz gain, ikastarotan emandako hitzaldiak, dagoeneko badauden baliabiadeak erabiliz biltzen hasi liteke gure esparrura moldatutako antzeko plataforma sortzeko, jakitza sare zabala sortuz, truke sarea aberastuz.

Alde batetik, hitzak boterea izan dezan, entzuleak entzun behar ditu. Julian Tresurek (2014) entzuleen harreta erakartzeko txutxumutxuak ekiditea, judizioak egitea, negatiboak izatea, kexatzea, aitzakiak jartzea eta gezurrak esatea ekidin behar dugula dio. Bestetik, 4 gako ematen ditu entzulearen atentzioa arrapatzeko: egia esatea (ideia), norbera izatea (estiloa), integritatea (ekintza, esandakoa egitea) eta maitasuna (asmo ona izatea). Besteen ongizatea bilatzean, alde batetik, ez dago aurreiritziarentzako tarte handirik, bestetik, mezuarekin ados ez egotea zailagoa da. Mezua ez da zer esaten den, nola esaten den baizik. Behin entzulearen harreta geureganatuta, bakoitza besteengandik ikasteko dugun aukera galdu ez dezagun, entzuten ikasi behar dugula ere azpimarratzen du Tresurek (2014).

Ahotsak ere garrantzia du dinamika honetan. Hemen gako batzuk: ahots grabeak boterearekin lotzen ditugu (autoritatearekin), tinbreak gertutasuna adierazi behar du, prosodia (hizkera monotonoa saihestea, errepikakorra ez izatea, tonuari edo mezuari dagokionean) kontutan izan behar dugu, erritmoa eta isiluneetaz baliatu behar gara, jarrera eta bolumena ere gure esku ditugu. Aldaera guzti hauek ikasi egin daitezke, hori da beren parte sendoena.

Bestalde, gorputzaren posturak, boterea transmititzen du. Gainera, Amy Cudyk (2012) dioenez, norberaren posturak pentsamendua islatzen du, besteengain zein norberarengan. Beraz, posturaren arabera pentsamendua moldatu daiteke ere, jarrera aldatuz. Horrela, norberaren eta gainerakoen jarrerak aldatu daitezke. Lidergoak ikastaldian duen garrantzia ikusita, gurputzaren hizkuntza lantzea garrantzizkoa da.

Gorputzaren jarrerarekin jarraituz. Mezuak transmititzerako orduan ere garrantzia itzela du alor honek. Andrea Vilallongak (2017) dioenez, transmititzen duguna horrela banatzen da

ehunekotan: %55 lehen iritzia, %38 hizlariaren gorputzaren jarrera, %7 hitz egiteko modua (ehuneko honen barruan, edukiak %2a besterik ez du hartzen).

Hitzaldietan, transmititu nahi dugun mezuak hartzen duen espazio txiki honi erreparatuta, agerikoa da, %2a besterik hartzen ez duen parte honek egitura ezin hobea behar duela. Paula Salernok (2017) diskurtso guztiek bere sekretua dutela dio. Gainera, diskurtsoen sekretua ez omen dago esaten denarekin lotuta, esaten den moduarekin baizik. Hitzak autatzeko moduak, esaten dena eta esaten ez dena determinatzen du. Nola esan erabakitzean, errealitatean nola eragin erabakitzen dugu.

Aipatutako gako guzti hauen laburpen bikaina da Will Stephen[10]en (2015) hitzaldia.




How to sound smart in your TEDx Talk | Will Stephen | TEDxNewYork [11]

[10] lotura: https://www.youtube.com/watch?v=8S0FDjFBj8o
[11] hitzaldiaren irudia.

# d. gaitegiari lotutako ekintzen proposamenak

| | bisitak, kolaboratzaileak, ekimenak... |
|---|---|
| **1. BOTEREA** | |
| hizkuntza | -bertso eskola |
| feminismoa eta arraza | -feminismoaz (Asier Azpiroz)<br>-maskulinitate berriak (Jokin Azpiazu)<br>-diskurtsoa, isiltasunak eta boterea (Itsaso Martin Zapirain) |
| umorea eta musika | -monologista feministak<br>-Aitziber Garmendia aktorea[12]<br>-algaraklown ospitaleko pailazoak<br>-Josu Larrinagaren doktorego tesia (euskal historia musikatik)<br>-euskal musikariak |
| turismoa eta futbola | -doblajea<br>-basque tour. turismoaren euskal agentzia. |
| **2. IRUDIA** | |
| marketing-a | -kalaka. komunikazio agentzia parekidea<br>*arazo trukaketa dinamina (pertsona eta egoerak trukatu ikuspegi/profil ezberdinak erabiltzeko) |
| euskararen irudiaren aldatzea | -poziktibity kanpainia<br>-a ereduko ikastetxeak/ colegio inglés...<br>-elkar argitaletxea<br>-aisialdi taldeak<br>-gaztetxeak<br>-ondare materiala eta inmateriala |
| inmigrazioa | -Xabier Paya<br>-immigrazioa eta nazionalismoa Euskal Herrian (Iker Iraola Arretxe) |
| eraginkortasun ekonomikoa | -antzoki zaharra, kilometroak, HPSren datuak<br>-Durangoko azoka<br>-Kaxilda liburutegi eta jatetxe alternatiboa<br>-Tabakalera |
| **4. SARE-LANA.** | |
| euskal kooperazioa eta diaspora | -euskal etxea<br>-skypeko elkarrizketak<br>-agirre lehendakaria fundazioa |

[12] https://alea.eus/araba/1511349932366-umorea-gutxietsita-dago elkarrizketa.

| | |
|---|---|
| harreman-tresnak | -TED hitzaldien formatuko bideo trukaketa |
| elkarlana garatzeko | *prestaket lanetan parte-hartzaileei laguntza eskatu:<br>-jolas, dinamikak → Paula<br>-haurrentzako materialen prestaketa → Vicotria<br>-irrati saioa →<br>... |

BIDEOFORUMERAKO:
-beltzean mintzo
-el discurso del rey
-elkarrekin togheter
-guk, nosotros
-joseba sarrionandia, hemen eta han.
-un dia perfecto
-los rubios

---landu daitezkeen ekimen gehiago: ---

| | |
|---|---|
| ESPAZIOA: | -paisaia linguistikoa<br>-"espacio publico como ideologia" (Manuel Delgado) |
| ONDAREA: | -ondare kulturala: San Telmo, Aranzadi zientzia elkartea eta Etniker.<br>-Euskal Hizkuntza eta kultur katedra. Universidad de Navarra.<br>-ahozko ondarea: ahotsak.com<br>-euskal musika kosmikoak (liburua). |
| SOSTENGUA: | -sostengu akademikoa: Joxemi Zumalabe fundazioa<br>-sostengu teknologikoa: Azkue fundazioa eta Albaola |
| IKUS-ENTZUNEZKOAK: | -euskal filmoteka<br>-euskal youtuberrak[13] |
| MUSIKA: | -Bechde test modua hizkuntzari begira<br>-tradizioa vs. musika: kalakan eta oreka tx taldeak<br>-europako herrien kantu txapelketa |

[13] lotura:
http://www.eitb.eus/eu/irratia/euskadi-irratia/programak/faktoria/audioak/osoa/3617126/euskal-youtuberrak-telmo-trenado-julen-hernandez-judith-astigarraga/

# 2. BIBLIOGRAFIA


- Foro de turismo responsable “Turismo y desarrollo: experiencias desde la cooperación internacional” Solidaridad para el desarrollo y la paz (http://sodepaz.org/images/cuadernos/turismo_y_cooperacion.pdf) (2017/11/6an ikusia)
- Garabide elkartea. 2015. “Hitzarmenerako markoa eta proiektua. Hizkuntzak biziberritzeko gidaritzan ikaskuntza prozesu intentsiboa. Aditu titulua” (argitaratu gabeko lana)
- Garin del Pozo, Itziar. 2015. “Durangoko azoka: 50 urte euskaldunak euskalduntzen” (argitaratu gabeko lana)
- Garin del Pozo, Itziar. 2015. “Orereetako irrati librea” (argitaratu gabeko lana).
- Garin del Pozo Itziar. 2017. “Agua como movimiento social” (argitaratu gabeko lana).
- Iraola Arretxa, Iker. 2012. “Euskal nazionalismoaren diskurtsoa gaur egungo immigrazioaren aurrean” EHU doktorego tesia.
- Iztueta Azurmendi, Ibai. 2015. “Cultura vasca vs Euskal kultura” Utriusque Vasconiae.
- Joly, Lionel. 2009. “Erlatibismo linguistikoa: hizkuntza eta kosmobisioa” Jakin aldizkaria, uztaila-abuztua 2009.
- Laka, Itziar “ Mandela was rigth: the foreing language effect” Mapping Ignorance webgunea (2017/11/27an ikusia).
- Larrinaga Arza, Josu. 2016. “Euskal musika kosmikoak” Baga Biga.
- Mayr, Andrea eta Simpson, Paul. 2009. “Language and power. A resource book for students” Routledge Englihs Language Introductions.
- Martinez Martinez, Ignacio. 2016. “Resumen ejecutivo. La cooperación vasca en el nuevo contexto internacional del desarrollo: análisi y propuestas en relación al marco de instrumentos, los agentes y los espacios de participación y diálogo” Euskal lankidetza (http://www.elankidetza.euskadi.eus/contenidos/informacion/publicaciones_memorias/es_pubmem/adjuntos/Lankidetza_Doc_Resumen.pdf) (2017/11/20an ikusia).
- Pastor, Luis. 2017. “Hizkuntzaren moraltasuna, erabaki zure ama-hizkuntzan” Zientzia Kaier webgunea (2017/11/16an ikusia).
- Pellicer García, Lidia. 2010. “La marca publicitaria creadora de significado identitario. Perspectiva semiótico-lingüística”. Universidad de Murcia.
- Ruiz, Juana. 2017. “Hizkuntza, ahotsa, irudia” Berria (2017/11/16an ikusia).
- de la Riva group. 2009. “Lingúïstica, semiótica y marketing: una reflexión” (2017/11/16an ikusia).
- Soziolinguistika Klusterra. “Euskararen irudia eta euskararekiko jarrera eta aurreiritziak” (lotura: http://www.soziolinguistika.eus/node/5519) (2017/11/27an ikusia)